# BERSO BERRIAC.

1

Milla sortzireun laroguei eta
amaica garren urtian
pentzamentuan egondua nais
lengoco egun batian
dama gastobat ucusi nuen
Donostiyaco calian
pobre isanta lusitu nairic
aberas batec añian.

2

Dama batzuec equentzen dira
igande arratzaldetan
ondo jantzita pasiatzera
aurraren aitzaquiy
abanicua eta sonbrilla
arturic escubanetan
oyec ainbeste malisi dunic
esta Probinsiyonetan.

3

Lanian ere astendirade
goisetic oso presaca
guero denbora pasatutzeco
ispilluari beidaca
balcoi batetic bestera alcar
ibiltzendira señaca
mutil gastebat pasatzenbada
arri babarrun tiraca.

4

Atenciyua jartzen diyote
mucica soñu onari
noisic bacoitza beguiratuas
beren soñeco gonari
lenguan farres egondu guiñan
beguira dama bateri
ispilluaren aurrian aisan
bere sonbraquin dantzari.

5

Besperatican egoten dira
pentzamentuan jarrita
biyar conprara juango dirala
gona berriya jantzita
sucalde dana lajatzendute
aspicos gora jirata
esanas banijua señora
piperrac falta dirata.

6

Bere señorac on ustietan
plasara suen bialdu
guchieneco iru orduan
echera etzan asaldu
esatensiyon emacumia
oso sabiltza berandu
echecuandria merque nainunta
esin nitzaden conpondu.

7

Lengo batian damacho bates
icusiya nago fiesta
cuanto bale un poco babarrun
andrebateri galdesca
basarritarrac tres erriales
emantziyon errespuesta
nescachac berris en este año
mucho garistiya esta.

8

Ondo jantzita jai atzaldetan
juntatzen dira paresca
goisian asco sisatu alden
danac alcarri galdesca
batec lau cuarto bestiac sortzi
irugarrenac bi pesta
oyec aitzcitun bertzolariya
aparte ibiltzen esta.

9

San Juanegunas Ernanin nitzan
pasatzen arratzalde bat
mucica arisun ta dantzaraco
artunun dama gastebat
acabatuta billatunuen
lurrian sacu chiquibat
pentzatu nuen eguinuela
neretzat fortun onenbat.

10

Choco batian asinitzaden
sacu chiquiya ascatzen
nere posaquin ortzaquin niscan
pusca batzuec equentzen
guero asisan barrenan situn
materialac asaltzen
egun gucico lana artunun
ango trapuac contatzen.

11

Portamonedan suria alda
guisonbati niyon galda
erantzun siran orren jabia
maltal suriyaquin juanda
suertiori es eguitia
guretzat ascos obeda
Probintziontan esta pasatzen
sacuartaco moneda.

12

Arropa ere gastatzen dute
aberasbaten graduan
sigueme pollo deitzen-diyoten
sinta batequin lepuan
illiac ere altu jarriric
gastelu baten moduan
orlaco gausa farragarriric
esta isango munduan.

13

Culpic gabeco dama gastiac
es guero punturic artu
mandatueta ateratzian
denbora guchi pasatu
seren nagusi echecuandrias
aldan ondona cunplitu
moduonetan serbitzen dunac
onrra onac jasoco ditu.

14

Dama gastiac despeditutzen
asibiardet onrradu
ariyo eta bestebat arte
notisi onac bialdu
paper bacoitza bosna sentimo
eguiten dirade saldu
Carnabal onac pasatutzeco
gastiac serbait bialdu

San Sebastián: Imprenta de La Unión Libe